# EGUZKI BERRI



JOXEMIEL BARANDIARAN HERRI IKASTETXEA
ATAUN

2010eko MARTXOA 86.alea 2 euro



AURKIBIDEA









# HIRU HILABETE HONETAN EGINDAKO EKINTZA BAT

## ***TALO JANA:***



Urtarrilaren 30ean, Guraso Elkartekoek antolatutako ekintza honetan, guraso eta haurrek taloak egiteko esperientzian parte hartzeko aukera izan zuten.



Ondoren, Ataungo talogile taldeak egindako nahiko talo gozo jan zen: txokolatearekin, hirugiarrearekin, txorizoarekin, gaztarekin eta bukatzeko esnetan beratuta.

Partaideak nahiko talo jaten ari ziren bitartean, trikitilari gazteek doinu alaiez giro atsegina sortzen lagundu zuten.









**ERREPORTAJEA- DONOSTIARA TXANGOA**

Otsailaren 24ean lehen hezkuntzako bigarren eta hirugarren zikloko ikasleok Donostiara joan ginen egun pasa. Gure asmoa EITB eta Kutxa espazioa ikustea zen.

Goizeko 9etan abiatu ginen autobusez eskolatik Donostia aldera. EITBra iritsi ginenean, Eli izeneko emakume bat geneukan gure zain. Barruko gela batera eraman gintuen lehendabizi. Han bi taldetan jartzeko eskatu zigun: alde batetik 3 eta 4. mailak eta bestetik 5 eta 6. mailak. Bertan lan egiten duen Jexux Etxeberria ere etorri zitzaigun. Gelan geundela Wazemankeko aktoreak EITBra sartzen ikusi genituen. Taldeka barruko geletara sartu ginenean, Elik gela desberdinetan zein programa grabatzen ziren agertu zigun. Han genbiltzala Goenkaleko Leonorrekin egoteko aukera ere izan genuen. Gero Vaya Semanitakoen gela sartu ginen. Han zebiltzan probak eginez lanean. Eurekin ere argazkia atera genuen. Hura ikusita gero, Goenkaleko gela desberdinak ikusi genituen eta baita hainbat aktore ere. Vaya Semanita telesaioko aktore eta Poxpolo pailazoa den Iker Galartza ere etorri zitzaigun gu geunden lekura.

EITB alde batera utzi eta 12:00etarako oinez Kutxa espaziora joan ginen. Bertan berriro bi taldetan banatu ginen: alde batetik 3 eta 4. mailak eta bestetik 5 et 6. mailak. Talde bakoitzak ordubeteko tailer batean parte hartu zuen. Hura bukatu zenean, Planetariuma sartu ginen. Aretoan patxaran eseri eta hura zen ikuskizuna! Ikusgarria izan zen sabaiko izar, planeten… mugimendua!







Ondoren bertan bazkaldu genuen. Ordu biak ziren eta denok goserik geunden.

Bazkaldu genuenean, Kutxa espaziora sartu ginen. Bertan libre ibili ginen nahi genuena ikusiz eta ukituz. Gauza asko zeunden gure gustukoak! Labirintoko gelan sartzea nahi genuen, baina azkenean bertan sartu gabe gelditu ginen.

Azkenik 15:30ak aldera autobusa hartu eta etxera itzuli ginen. Benetan merezi izan zuen Donostiara egindako txangoak!

Laugarren maila










# OIHANEKO ANIMALIAK BELARJALEAK



ERRINOZEROAK



ELEFANTEAK



ZEBRA

JIRAFA









# 2. HARRAGITJALEAK



LEHOIAK

KROKODRI-LOA





TIGREA

H.H. 4 URTE









AIZKORRI-ALDAPA GORA
JARTZEN GARA GORRI-GORRI



ENAITZ-ZURE INGURUAN
IBILTZEN NAIZ MAIZ MAIZ



TXINDOKI ATAUNDIK IKUSTEN ZAITUT EDERKI



GAINETA GORA IGO ETA JAN
DET GAILETA

ARATZ-AURRETIK DOAZ OLATZ ETA ANARTZ

5 URTE A

ORHI-BETI ZAUDE HORI-HORI










# HITZ-JOKOA




BIRZIKLATU
BIRZIKLAT
BIRZIKLA
BIRZIKL
BIRZIK
BIRZI
BIRZ
BIR
BI
B

























5 URTE B








# MARTIN ETA OTSOA



Baserri batean Martin artzaina eta bere animaliak bizi ziren: behiak, ardiak, txakurrak, oiloak eta txerriak. Martini ehiza asko gustatzen zitzaion. Otsoak ehizatzea zuen gogoko, hauek baserriko animaliak jaten baitzizkien.

Han inguruan, txabola batean lapur talde bat bizi zen. Lapur haiek txakur bat zuten.



Udaberriko egun polit bat zen eta Martin artzaina, ardiak hartu eta mendira joan zen. Lapurrak berriz, Martinen baserrira joan ziren dirua lapurtzeko asmoz. Baina Martinek ez zuen dirurik. Lapurrak asko haserretu ziren eta txerrikumeak lapurtzea erabaki zuten.



Bat-batean basoko otso maltzurra agertu zen. Gosetuta zegoenez, txerrikumeak jan beharrean, lapurrak handiagoak zirenez, lapurrak jan zituen.

Arratsaldean Martin menditik baserrira iritsi zenean, etxeko atarian otsoa aurkitu zuen lo sakonean. Esnatu eta otsoak gertatutakoa kontatu zion. Handik aurrera otsoa Martinekin bizi izan zen.



**1. maila**



# BERTSOA

Aukera itzazu bertsoa osatzeko behar diren hitz egokiak eta bukatzen duzunean, "Batetikan korroska" doinuarekin kanta dezakezu.

Ezkur – irinarekin
zaplaka ……………..
ilargiaren antza
da eman ……………….
maldan behera hartu du
gurpin baten …………..
loditasuna kenduz
hara eta …………..
azkenik taloa da
bihurtu ……………

DIONA

AMONA

ZAIONA

HONA

FORMA









**1. MAILA**







# ASMAKIZUNAK

Itsasoa bezain urdin
egun askotan.
Lurretik oso urrun
eta guk ezin
eskuarekin iritsi.
Zer da?





Ederra lorea,
jira eta bira,
eguzkiaren bila.

Gauez esna, egunez lo.
Itxuraz aldatu egiten da.
Batzuetan gizen, bestetan argal.
Zer da ?





Goitik begira dagoen
begi handia
Zer da?



Hanka baten gainean
bizi naiz eta beso asko ditut.
Zer naiz?

2. maila



# IMAREN AMETSA



Bazen behin Ima izeneko neska bat. Hamaika urte zituen eta abeslaria izan nahi zuen handitan. Laster hamabi urte egiten zituen eta opari, mikrofono bat eskatu zuen.

Mikrofonoarekin asko ikasi zuen abesten. Etxean, Shakiraren abestiak jartzen zituen eta berarekin batera kantatzen zuen. Gitarrako klaseak hartzen zituen eta elektrikoa ari zen ikasten.

Behin batez, kasting batera aurkeztu zen Ima. Iadanik hemezortzi urte zituen eta aukeratzen bazuten, euskal pelikula musikal batean parte hartu ahal izango zuen.

Eta halako batean...

-Tirrin, tirrin... -telefonoa zen.

-Bai, nor da? –Imak.

-Ima izango zara, ETB-ko zuzendaria naiz eta filmerako zurekin kontatzen dugula esateko deitu dizut.

Imak oso ondo antzeztu zuen filmean, ikusleak txunditurik eta liluraturik utzi zituen eta filmearen bidez bere burua ezagutzera eman zuen. Honela ondoren musika arloan lan egiten zuen, jende garrantzitsu askok deitu zioten, eta denen laguntzarekin, gaur egun Ima musikari ospetsua da.

2. maila









UNTXIA, TXORIMALOA ETA AZENARIOA

Goiz batean Larraine izeneko baserri batean txorimaloa, untxia eta azenarioa elkartu ziren. Bata menditik, eta beste biak baratzean zeuden. Untxia hain bidaia luzea eginda, goseak etorri zen.

-Azenarioa hartu ahal daiteke?

-Ez, ezin duzu hartu! -esan zuen txorimaloak.

Orduan azenarioa sartu zen eta...

-Ni ez jan e! -esan zuen azenarioak.

Borrokan hasi ziren eta orduantxe baserritarra etxetik atera zen eta esan zien:

-Ospa! -esan zion untxiari.

Untxia negarrez abiatu zen. Baina untxia ez zen damutu. Hurrengo egunean untxia txorimaloz jantzita etorri zen. Oilarrak kantari hasi aurretik etorri zen untxia. Isil-isilik, baina ezin baserritarra jeikiko zelakoan. Orduantxe azenarioa hartzera zihoala kukurruku –kukurruku! -egin zuen oilarrak. Azenarioa hartu eta izkutatu egin zen. Baserritarra oheatik jeiki, dutxatu, gosaria edan eta kanpora atera zen. Sardea hartu eta aitzurrarekin baratzera abiatu zen.

Hala bazen eta ez bazen errenditu egin zen.

2. maila









# LOBI TXAKURRA GALDUTA

Baserri batean Leire eta bere gurasoak bizi ziren. Baita Lobi izeneko txakurra ere. Leirek zazpi urte bete zituenean Lobi txakurra izan zen bere gurasoen oparia. Leireren gelan lo egiten zuen. Leirek egunero jaten ematen zion eta berarekin asko jolas egiten zuen. Egunero hartzen zuen autobusa ikastolara joateko eta Lobik lagundu egiten zion. Musu bat eman eta arratsalde arte agurtzen zen Leire, egun osoa ikastolan igarotzen zuelako. Gau trumoitsu batean, Lobik etxetik alde egin zuen. Mendian zebilen beldurtuta hotzez eta etxeko bidea ezin bilaturik. Goizean Leire esnatu zenean Lobi falta zela konturatu zen. Gurasoei esan eta mendira irten ziren denak Lobiren bila.

-Lobi, Lobi! -oihukatzen zuen Leirek, baina erantzunik ez.

Gaua inguratzen ari zela ikusita etxera bueltatzea erabaki zuten. Leire oso triste zihoan, Lobi betirako galdu zuela pentsaturik.

Leireren poza! Etxeko atean Lobi ikusi zuenean hotzez dardarka eta busti-busti eginda.

Etxe barrura sartu eta su ondoan jarri zuten. Esne beroa edaten eman zion. Handik aurrera berriro ere pozik bizi izan ziren.

2. maila





# TXAKUR GALDUA

Bazen behin Maddi izeneko neskatxa bat. Maddi oso pozik bizi zen bere txakur Yakirekin.
Egun batean Maddi txakurra paseatzera irten zen mendira. Orduan Maddiren txakurra galdu egin zen. Maddi kezka-kezka egin zen eta oihuka hasi zen:
-Yaki, non zaude?
Han zebilela mutiko batekin egin zuen topo eta mutikoak galdetu zion:
-Nola duzu izena?
Eta neskak erantzun zion:
-Maddi dut izena eta zuk?
-Ni Julen naiz, zer gertatzen zaizu?
-Txakurra galdu egin zait.
-A bai! Eta nolakoa da zure txakurra?
-Marroia da -esan zuen Maddik.
Orduan hots bat entzun zuen:
-Guau Guau!...
Eta Maddik esan zuen:
-Baina, hori nire txakurra da!
Yakiren bila joan ziren eta esan zion Maddik txakurra hartu ondoren:
-Nahi al duzu nire etxera etorri meriendatzera Julen?
Eta Julenek erantzun zion:
-Nola ez ba!
Orduan meriendatzera joan ziren Maddi, Julen eta Yaki.
Handik aurrera Maddi eta Julen lagun handiak izan ziren.

2. maila





# HILABETE BAT OPORRETAN

Aspaldi-aspaldian herri txiki batean gaztelu beldurgarri bat zegoen. Gaztelu hartan mamuak, banpiroak, otso-gizonak bizi ziren.

Gauero herrira joaten ziren. Herriko jendea bildurtuta zegoen eta alkatearengana jotzea pentsatu zuten. Alkateak herritarrei entzun eta esan zien:

-Honek ezindu horrela jarraitu!

Orduan pentsatzen hasi zen « nola konpondu dezakegu arazo hau » ?

-Badakit! Karibera joateko abioi-txartelak erosiko ditugu eta gazteluko biztanleak hara bidaliko ditugu.

Eta hala egin zuten.

Handik aurrera herri txiki hartako biztanleak pakean bizi izan ziren.

2. maila









INDIOAK ETA BAKEROAK

Garai batean, indioak eta bakeroak bizi zirenean, bazegoen bakeroen talde bat: Xabier, Arnau, Kepa, Adur, Mattin, Leire, Sara eta Aitana izena zutenak. Oso ausartak ziren eta oso ondo zekiten borroka egiten.

Egun batean, bakero taldeak oporretara joatea pentsatu zuen. Zaldi gainean jarri eta abiatu ziren. Bidean zihoazela indioak bide erdira azaldu zitzaien. Indioek zaldiak eta pistolak kendu egin nahi zizkieten bakeroei. Baina hauek pistolak hartu eta tiroka hasi ziren. Borroka horretan bakero batzuk hilik suertatu ziren baina hala ere, bakeroek irabazi zuten.

Hildakoak zaldi gainean jarri eta beraiekin batera eraman zituzten. Noski hilketa honekin oporrak bukatutzat eman zituzten eta denak triste-triste etxera joan ziren.

Hala bazan edo ez bazan sar dadila Ataungo plazan. 2. maila









# MAMUA ETA HIRU UME

Egun batean, bazen mamu bat eta etxean aspertu egiten zen eta kalera irten zen. Kalean mutiko bat aurkitu zuen. Mamua eta mutikoa futbolean hasi ziren jolasten

Beste mutikoek ere nahi zuten jolastu eta mutiko asko juntatu ziren. Futbolean jolasten ari zirela, mutiko batek baloia errekara bota zuen. Mutiko guztiak hasi ziren baloiaren bila baina, urak baloia zeraman. Halako batean han zebiltzatela baloia harrapatu nahiean, mutiko bat errekara erori zen. Etzekien igeri egiten eta itotzen ari zen. Baina mamuak, mutikoa salbatu egin zuen.

Egun hortatik aurrera lagunak izan ziren betiko mutikoak eta mamua eta etzuten beldurrik izan.

2.maila








# TITOF ASTRONAUTA

Bazen behin Titof izeneko astronauta bat ilargira joan nahi zuena.

Ilargira joateko eguna ailegatu zenean, oso urduri jarri zen.

-10, 9, 8, 7, 6, 5, 4, 3, 2, 1, 0.

Kohetea zerurantz abiatu zen. Hain urduri zegoenez behar ez zen planetara joan zen: Saturnora.

Saturnon hotz handia egiten zuen eta Titof kohetean sartu eta ilargira abiatu zen. Ilargira iritsi zen eta han harri bat hartu zuen Lurrera eramateko. Lurrera zihoala gasolina gastatu zitzaion eta betirako espazioan geratu zen.

Handik egun batzuetara, Lurrean, bere lagunak kezkaturik zeudenez, bere bila joatea erabaki zuten. Abiatu ziren eta astebete behar izan zuten bilatzeko, Lurrera denak oso zoriontsu bueltatu ziren.

2. maila







# ESKOLAKIDE BERRIA

Kaixo, nire izena Aietz da eta kontatuko dizuet nola egin nuen nik orain daukan lagunik onena:

Nik beste lagun on bat neukan, baina bere gurasoak banandu egin ziren. Aita Estatu Batuetara joan zen eta ama Bartzelonara. Bera, orduan, batetik bestera ibiltzen da.
Ah! eta esan behar dut bere izena Joel zela.

Eta asteazken batean, gure maisu Joanek esan zigun biharamunean eskolakide berri bat etorriko zitzaigula gelara.

Eta halaxe izan zen, hurrengo egunean hantxe azaldu zen Kanariasetatik etorritako mutikoa.
Gauero pentsatzen aritzen nintzen ea zer moduzko mutila izango zen, ea jatorra izango zen edo...

Hala, egun batez biok hitz egiten hasi ginen:
-Kaixo nire izena Aietz da eta zurea?
-El mio es Martin.
-Nahi duzu nire laguna izan?
-¡SI!
Horrela bada, hasi ginen lagunak egiten eta lagun handiak gara geroztik.




3. maila







# INDIO

Behin baten Aralarren aitona bat txabola batean bizi zena. Joan zuen izena. Aitona Joanek zaldi talde bat zeukan, oso zaldi dotorez osatua.



Tximistak eta trumoiak jotzen zuten gau beldurgarri batean Indio izeneko zaldi batek hesiaren gainetik salto egin zuen eta basora joan zen. Hurrengo goizean Joan esnatu eta bere zaldiak kontatzen hasi zenean konturatu zen Indio falta zela. Orduan Joan basora joan eta deika hasi zen:

- Indiooooo! Indioooooo! Indiooooooo!

Eta horrela pasa zuen eguna, baina zaldia ez zen agertu eta aitona azkenean txabolara itzuli zen. Triste zegoen eta afaldu gabe oheratu zen.

Biharamunean mendian ibilalditxo bat egin zuen eta Indioren argazkia eraman zuen eta mendian topatzen zuen jende guztiari galdetzen zion, ea argazkiko zaldia ikusi zuen. Jende guztiak ezetz erantzuten zuen. Bere txabola bistan zuenean mutiko bat ikusi zuen eta esan zuen:

- Ei! Ei! Mutiko zer nahi duzu?

- Zaldi hau zurea al da?

- Bai, nirea da. Hau poza! Non aurkitu duzu?- galdetu zion aitonak.

- Erreka bazterrean zegoen.

Mutikoari zaldia ekartzea eskertu nahirik bere txabolara gonbidatu zuen. Han biak batera meriendatu zuten. Joanek mutikoari zaldian ibiltzen erakutsi zion.

- Zaldian ibili nahi duzunean etorri lasai hona.

Handik aurrera biak lagun haundiak izan ziren eta ondo bizi izan ziren.

3. maila







# Yolanda kortsarioa

*Behin bazen Yolanda izeneko neskatila bat, bere adineko anaia bat zeukana. Biek zortzi urte zituzten. Bere amak esaten zion:*

*-Yolanda, zer izan nahi duzu handitan?*

*Berak ez zion erantzuten, baina biharamunean esnatu eta Yolandak kortsarioaren arropa jantzi zuen eta esan zion amari:*



*-Ama, nik kortsarioa izan nahi dut.*
*-Zeer? Kortsarioa izan nahi duzula?-esan zion bere amak.*
*- Bai.*

*Parkera joan eta Yolandak esan zien lagunei:*

*-Aizue lagunduko al didazue txabola egiten? Kortsarioa naiz eta.*
*Orduak eta orduak pasa ziren txabola hori egiten zuten bitartean. Bukatu zutenean, Yolandaren ama etorri zen eta esan zion:*

*-Yolanda arropak erostera joan beharra daukagu.*
*-Zergatik? Ama, nik ez dut nahi ¡Oraintxe bukatu dugu txabola eta orain beste zeregin batzuk dauzkat.*

*.Anaiak ere esan zion:*

*-Etorri Yolanda, egin kasu amari!*

*Baina berak ez zuen nahi eta ez zien jaramonik egin.*

*Hala, irudimenezko mundu horretan egunak eta egunak pasa ondoren, azkenean Yolandak ulertu zuen kortsarioarena fantasiazko ipuina izan zela eta bere ingurukoei kasu egiten hasi zitzaien.*

*3. maila*








BAZEN IDOIA IZENEKO NESKA BAT. BERE AMETSA MUNDUKO KORRI-KALARI HOBERENA IZATEA ZEN.
NI KORRIKALARI PROFESIONALA IZANGO NAIZ HANDITAN!


HANDIK 2 EGUNETARA IDOIAK KARRERA ZUEN ETA JUXTU-JUXTU BAINA IDOIAK IRABAZI EGIN ZUEN.
LARRI IBILI NAIZ BAINA...


IDOIAK 20 URTE ZITUEN ETA KOPAK EZ ZEKIZKIEN NON SARTU, APALA BETERIK BAIT ZUEN.


ATERATZEN ZEN KARRERA GUZTIETAN 1,2 edo 3. EGITEN ZUEN IDOIAK.


IDOIA KONFORMATZEN ZEN HORREKIN, NAIZ ETA KORRIKALARI PROFESIONALA EZ IZAN, BAINA HALAKO BATEAN... TIRRIN-TIRRIN...
NAHI AL DUZU GURE FEDERAZIOKOA IZAN?


HANDIK AURRERA IDOIA OSO ZORIONTSU BIZI IZAN ZEN, BERE AMETSA BETE BAIT ZEN.
GOGOR LAN EGIN DA, ZUK ERE LOR DEZAKEZU ZURE NAHIA.

Nora








# AITONAREN SEKRETUA

Aitona Joxe gustura bizi zen bere familiakoekin. Benetan denek maite zuten. Urteak aurrera joan arren, burua oso ondo zeukan. Gustuko zuen gauero bere biloba Joani ipuinak kontatzea. Su-bajuaren ondoan jartzen zirenean, denbora azkar pasatzen zen bientzat. Gaur ere biloba kontuak entzuteko prest zegoen, baina aitonaren hitzek zur eta lur utzi zuten:

- Biloba, orain inork ez dakien sekretu bat kontatu behar dizut. Altxorra dago lurpean gordeta Aizkoate mendian.
- Baina altxorra non dagoen jakiteko, ba al daukazu maparik?
- Bai. Nire ohe ondoko armairuan daukat gordeta. Bihar goizean abiatuko gara bertara.

Hurrengo goizean eguna argitu orduko, aitzurra eta pala hartuta abiatu ziren aitona Joxe eta biloba Joan Aizkoaterantz. Urte asko pasatu ziren aitonak altxorra lurpean gorde zuenetik. Horregatik ez zekien seguru altxorra non egongo zen gordeta. Mapari behin eta berriz begiratzen zien eta altxorra gordeta egon zitekeen lekuan zuloa egiten hasten ziren. Baina alperrik! Han ez zegoen ezer. Horrela behin eta berriz: zuloa egin eta zuloa tapatu. Azkenerako biak urdurik zeuden.
Orduak eta orduak zeramatzaten altxorraren bila. Arratsaldeko 4etan Joanek aurkitu zuen altxorra:

- Aitona, aitona hemen dago altxorra!

Kaxa dotorea atera zuen bilobak zulotik. Aitonak kaxa ikusi zuenean, zera esan zion bilobari:

- Horixe da! Aurkitu dugu!
- Aitona, gauerako etxean egon nahi badugu, mugitu beharrean gaude!

Hartu aitzurra, pala eta altxorra eta pozik abiatu ziren biak etxera.
Eguneroko ohiturari eutsiaz, gau hartan ere aitonak bilobari ipuina kontatu zion.



Laugarren maila




# NIRE LORO PASKUAL




















# AFRIKARRAK

Bazen behin, familia bat oso txiroa zena, famili hartan aita, ama, anaia eta arreba ziren Janari eta ur oso gutxi zuten bizi ziren lekuan. Egunez bero handia egiten zuen eta gauez berriz hotza. Ura euritik edo putzuetatik hartzen zuten, beraien bizimodua oso zaila zen.

Familia hau, Afrikako herri txiki batean bizi zen, norbait gaixotzen baldin bazen medikua oso urruti zegoen, eta asko eta asko hil egiten ziren. Aita eta ama aspalditik ari ziren pentsatzen Europara joatea, Afrikan janari eta ur gutxi zeukatelako, orduan beraien seme-alabei esan zieten: “Txalupa bat egingo dugu Europara joateko”. Lehenengo eroritako arbolak hartu eta txalupa sinple bat egin zuten, ondoren, behar zuten guztia hartu zuten eta herritarrei agur esatera joan ziren.



Hurrengo goizean abiatuko zirela eta agurtu egin ziren. Iritsi zen goiza, itsasoa bare-bare zegoen eta afrikar familia tristuraz abiatu zen. Egunez, haizea beraien alde zegoelako gustura jartzen hasi ziren, eta horrela pasa zen eguna lotarako ordua iritsi zen arte. Gauean denak lo zeudela olatu handi batek txalupa jo zuen, denak blai esnatu ziren, itsasoaren haserreari aurre eginez. Elkarri helduta geratu ziren, beste olatu handi batek jo zuen txalupa eta itzuli egin zen. Zorte haundiarekin familia osoa elkartzea lortu zuten eta txaluparen azpian egon ziren, pixkat itsasoa lasaitu zen arte eta orduan txalupari buelta ematea lortu zuten.

Egunak igaro ziren, batzuetan hobeto eta beste batzuetan oso gaizki pasa zuten, baina pozik zeuden denak ondo eta bizirik zeudelako.

Halako batean aita oihuka hasi zen. “LURRAAA!!! LURRAAAA!!!”

Denak gustura zeuden, azkenean lortu zuten iristea. Ordu batzuk eta gero, herri txiki batera iritsi ziren. Bertan arrantzaleak bizi ziren. Arrantzaleen lagunak egin ziren eta bakoitzak lan bat aurkitu zuen eta hortik aurrera herrialde berrian asko saiatuz aurrera ateratzea lortu zuten.

5.maila







# BERTSOAK

## UDABERRIA

Izotza joan da ta
beroa barrena
udaberria beraz
omen nabarmena.
Gu pozik gaude eta
hori da onena
hostoak berpiztuta
fruituak hurrena.




## ASTE SANTUAK




Aste Santuak datoz
umeak gustura
lagunekin gehiago
jolastuko gara.
Opor motzak dira ta
ondo pasatzera
ez gara ta aspertzen
batetik bestera.

## POBREZIA

Afrikan gaizki bizi
eta guk negarra
Afrikan pobrezia
ta hemen indarra.
Han ez dago urik ta
beraz bai beharra
baina halare dute
beti irrifarra.




5. maila






# ERLOJU MAGIKOA

Bazen behin Jose izeneko mutil bat. 10 urte zituen eta oso alaia zen, oso gogoko zuen erloju bat edukitzea, baina oraindik ez zeukan.

Hurrengo eguna ailegatu zen eta pozik zegoen bere urtebetetze eguna zelako eta bere amak baloi bat oparitu zion, amonak pelota, aitonak futboleko zapatilak, eta aitak erlojua. Jose poztu egin zen bere lehenengo erlojua oparitu ziolako aitak.
Eta bat-batean Jose, txikitzen hasi zen eta esan zuen:
-Zer gertatzen zait? Txikitzen ari naiz!!!
Jose harritu egin zen bere buruarekin. Aitak berriz zera esan zion:
-Baina ume bat dirudizu, 7 urteko ume bat ematen duzu!
Eta Josek erantzun zion.
-Baina, 10 urte ditut eta oraindik ume bat naiz!!!

Goiza zen eta Jose eskolan zegoen, azterketa egiten ari ziren eta ordubete pasatzerako ikasle guztiek bukatu zuten, Josek izan ezik.
11:00ak iritsi ziren eta Jose futbolean jolastera zihoan. Bere gelakoak oso onak dira eta baita bera ere, baina oraingo honetan jolastu beharrean, lagunei ostikadak emanez ibili zen Jose.



Ama eta aita arduratuta zeuden Joseren jarrerarekin eta medikuarengana joan ziren, Joseri zer gertatzen zitzaion jakin nahi baitzuten.
Eta medikuak esan zien:
-Jose handitzen eta heltzen joan beharrean, atzeraka ari da.
Aita eta ama urduri jarri ziren
-Ez dakit, ume honek ez du ezer!!! – Eta negarrez hasi ziren.
Hurrengo egun batean, Jose telebista ikusten ari zen eta esan zien gurasoei.
-Ama, aita, begira!, lau jakintsuak azaltzen dira. Ea zer esaten duten!!!
Lau jakintsuek zera esan zuten telebistatik:
-Erloju hau duena etorri dadila telebistara!!!
Jose eta aita telebistara joan ziren, Joseri oparitu berri zioten erlojua baitzen telebistan erakutsi zutena. Ailegatu ziren eta Jose lau jakitsuengana joan zen eta erlojua erakutsi zien. Orduan jakintsuetako batek esan zuen:
-Erloju hau non aurkitu duzu?
Eta Josek erantzun zion.
-Nire urtebetze egunean oparitu zidan aitak eta erloju hau jantzi nuenean txikitzen hasi nintzen, nola haundituko naiz horrela!
Eta jakintsuenetako batek erantzun zion:
-Erloju hori magikoa da eta erloju hori aurreraka mugitu partez denbora atzeraka joaten da eta horregatik txikitzen ari zara.
Horrela Josek erloju hori konpondu eta handitzen hasi zen. Eta Jose handik aurrera poz-pozik bizi izan zen.

5.maila







# OLERKIAK




Beraiek pobreak dira
gu ez.
Beraiek txabolak
guk ez.
Beraiek medikurik ez
guk bai.
Guk imaginazioa bai
beraiek gehiago.

Bi mundu
bata pobrea.
Gu eroso eroso,
besteak lan eta lan
pobreziak jota.



Udaberria iritsi da
loreak ere bai.
Haize freskoa
dabil firin eta faran.




Baloia porterira
pelota paretara
pozik gabiltza gu
saltoka eta irrika.




Batzuk bertsoak kantatzen
besteak gogoz txalotzen
guztiok disfrutatzen.

5. maila







# BERNEDO



Bernedon izan gara pozik eta alai
lagun berriak egin eta eskolatik jai
ingelesa ikasi eta mintzatzeko gai
Inauteriak galtzeaz damu,
baina Bernedon denok alai.

Interneten daude gure argazkiak,
denok azaltzen gara barrez,
ez zegoen inor negarrez,
Batzuk ondo besteak bikain,
guztia izanda jolas eta atsegin.

Atauna ailegatu eta musuak dantzan,
familiakoak bota gaituzte aste guztian faltan.
Eskerrak aukera aprobetxatu dugun.
Lagunetaz oroitzen gara oraindik
eta zer ondo pasa genuen akordatzen gara.

6. maila







# Bidelapurren koba

- Goazen azkar, iluntzen hasia da eta.

- Lasai, ziur ez zaiola ezer pasa.

-Bai, baina galduta egon liteke.

- Egia, goazen azkar.



Mikel eta Maialen bere lagun Joanesen bila abiatu ziren. Joanes bere karabinarekin ehizera abiatu zen, baina zazpi eta erdiak ziren eta oraindik ez zen ageri. "Puntabeltz" mendi aldera joan ziren eta ordu erdi batean aurkitu zuten.

- Joanes!! Zer gertatu zaik mutil?

- Uff... eskuan min handia diat. Bat-batean euri asko hasi dik eta ni koba horretara joan nauk. Han egon nauk zuek etorri arte.

-Beno, beno lasai. Orain goazen azkar etxera.

Denak etxera joan ziren, eta lasai egin zuten lo. Baina hurrengo egunean...

-Lagunak...-azaldu zen Joanes larri- niregana zuzendutako karta benetan beldurgarri bat jaso dut.

- Beno, beno lasai -hasi zen Maialen- beno, eta zer jartzen du ba karta horretan?



- Hauxe jartzen du: *Joanes. Itzuli atzo egon zinen kobara bertatik eramandakoa. Bestela damutuko zara.*

-Ba, lasai! Seguru broma bat dela.

- Ez. -moztu zuen Mikelek- Barkatu, ez da beldurra sartzeagatik baina nire aitonak kontatzen du bidelapur batzuk ibiltzen direla koba horren barru-barruan.

- Agian gehiago aztertu behar genuke.

- Ea Joanes. Esan argi eta garbi zer gertatu zen.

- Tira, -hasi zen Joanes- kobara sartu nintzenean, hotza nuen eta askoz barrurago sartu nintzen. Hala ere hotza neukanez han barruko harriak sarreraraino eraman nituen haizea sartzea galarazteko.

-Ez dakit...-esan zuen Maialenek- agian harri horietan dago gakoa, agian bereziak dira.

- Berriro koba barrenean uztea dugu onena.



Eta horrelaxe egin zuten. Hiru egun gehiago itxaron zituen eta ez zitzaion ezer pasa Joanesi. Handik aurrera denak pozik bizi izan ziren.

6. maila








# GIZA OTSOA

- Ideia bat daukat!- esan zuen Arkaitzek-ilargi betea dagoenean, hau da gaur mendira joango gara eta horrela jakingo dugu zein den gizotsoa. Ados?

- Ados baina niri beldur pixka bat ematen dit baina horretarako bada ni konforme nago! -erantzun zion Eiderrek.

Beste guztiek ere konforme zeudela esan zuten eta etxeetara joan ziren motxilak prestatzera, eta bostak laurden gutxitan geratu ziren plazan. Ordua zen denak prest zeuden. Azkar abiatu ziren zeren eta orain azkar iluntzen baitu eta ez zuten nahi bidean iluntzea. Iluntzen hasi zuenean leku horretan geratzea erabaki zuten ez baitzuten galdu nahi. Bi kanpindenda jarri zituzten bat neskena eta bestea mutilena. Baina oso gertu. Sua egin zuten afaltzeko eta etxetik ekarritako janaria berotzen hasi ziren. Afaldu eta gero ohera joateko goiz zela eta sutondoan geratzea erabaki zuten.



-Zer da hots hori? -esan zuen Janirek

-Aaaaaaaaaaaaaaa!! gizotsoa da!!

-Goazen azkar!!

Eta korrika abiatu ziren ez zekiten nora zihoazen baina korrika zihoazen. Normala den bezala ez zuten gizotsoak harrapatzea nahi. Horrelako batean non agertuko gizotsoa eta beraien aurrean. Buelta eman eta atzeraz zihoazen korrika kanpin dendetara ailegatu ziren. Eta han zein egongo eta beraien gurasoak barrez lehertzen

-Ama korrika joan behar dugu gizotsoa dator gure atzetik!

- Bai zera, gizotxo hori badakizue zein den? Zuen irakaslea mozorrotuta!

Eta horrela jakin genuen den-dena guraso eta irakasleen txantxa bat zela. Beldur ederra pasatu genuen baina ederki pasa genuen!

6. maila



# ESKOLAKO ETA HERRIKO BERRIAK

**TRASTE ZAHARREN BILKETA:** Martxoaren 3an eta 17an altzari tresna elektriko eta baliorik gabeko tresnen bilketa izan zen Ataunen.

**ATAUNGO ITURRIEN KATALOGOA:** Joxean Dorronsoro Esnaolak Ataungo iturrien katalogoa egin du. Bertan Ataungo 65 iturriri buruzko informazioa bildu du .

**ENPLEGU TAILERRA:** Orain dela hilabete batzuk, gure herrian martxan jarri zen enplegu tailerra. Momentu honetan 20 ikasle eta 4 irakasle ari dira enplegu lanetan. Ekintza honen helburuak hauek dira: alde batetik langabetuei prestakuntza ematea eta beste aldetik herrian zehar zenbait obra burutzea.

**GANADUAREKIN ARAZOAK:** Azken boladan arazo asko sortzen ari dira menditik jaisten den ganadua lur partikularretan sartzen delako.
Udal ageriak dionez "Hemendik aurrera, herri lurretan baimenik gabe sartzen den ganaduaren jabeari, isuna ezarriko zaio eta ganadua bahitu egingo da.



**IDIAZABALGO KROSA:** Urtero bezala San Blasetako korrika saioan Ataungo eskolako ikasleek parte hartu zuten. Goiz benetan ederra pasa zuten.







**SAN SEBASTIAN** : Urtarrilaren 19an Haur Hezkuntzako ikasle eta irakasleek danborrada eguna ospatu zuten. Bertan Lehen Hezkuntzako ikasle, irakasle eta guraso asko izan ginen ikuskizun eder hau ikusten.

**SANTA AGEDA**: Urtero moduan irten ginen koplak abestera. Aurten ordea, aldaketa bat egon da. Talde osoa San Martinen atera beharrean, bi taldetan banatu eta batzuk San Martinen eta besteak San Gregoriora joan ginen.

**INAUTERIAK:** Otsailaren 11 eta 12an inauterietako ekitaldiak ospatu genituen. Ostegunean gurasoentzako emanaldia egin genuen eta ostiralean berriz Zegama, Gabiria eta Lazkaoko ikasle eta irakasleentzat.

**HERRIKO PLAZA:** Otsailean hasi eta urtebetean egin nahi dituzte San Martingo plaza berritzeko lanak.

**6. MAILAKOAK BERNEDORA**: Otsailaren 8tik 12-ra Bernedoko barnetegian izan ziren 6. mailakoak. Bertara ingelera ikastera joan ziren. Han, Eibarko beste ikasle batzuekin elkartu ziren eta beraiekin denbora asko igaro zuten. Ondorioz lagun handiak egin ziren.
6. mailakoek diotenez merezi du Bernedora joatea.



**ETB ETA KUTXA ESPAZIOA:** Otsailaren 24an txangoa izan genuen Donostiara 3, 4, 5 eta 6. mailakoak. Irteera polita izan zen. EITBn telebistako protagonista asko ikusi genituen: Vaya Semanitakoak, Goenkalekoak ... Horrez gain "platoak" bisitatu






genituen. Protagonisten sinadurak ere jaso genituen. Miramonen berriz, ziklo bakoitzak tailer bat izan zuen eta gero Planetariumera joan ginen lurra, izarrak, eguzkia eta sateliteei buruzko ikuskizun ederra ikustera.

**ESKIATZERA**: Otsailaren 27 eta 28an Ataundik autobus bat irtetzeko zen Candanchu aldera, baina, haize bortitzen egunak izan zirenez, bertan behera gelditu zen irteera. Martxoaren 27an egitekotan geratu ziren Candanchurako joateko.

**RUGBY**: Otsaileko azken astean Ordiziako RUGBY taldeko bi jokalari etorri ziren eskolara 3, 4, 5 eta 6. mailako ikasleak, beraiek praktikatzen duten kirolean trebatzera.



**GOIERRI BEHEKO PILOTA TXAPELKETAKO FINALA**: 5. mailako 4 ikaslek jokatu zuten finala: alde batetik Iraitz eta Unai eta beste aldetik Eneko eta Aitor. Irabazleak Iraitz eta Unai izan ziren 5 eta 2ko emaitzarekin.







**GIPUZKOAKO NESKEN PILOTA TXAPELKETA**: Ainitze eta Maitek Gipuzkoako pilota txapelketako finala jokatu zuten Errezilgoen kontra eta 4-2 nagusitu ziren Errezilgo neskak.

**GIPUZKOAKO MUTILEN PILOTA TXAPELKETA:**
Iraitz eta Unaik jokatu zuten martxoaren 20ean finaleko partida Aiakoen aurka.

**ARBEL DIGITALA ETA ORDENAGAILUAK**: Eskola 2.0. proiektua dela eta, aurten 5. mailan gauden ikasleoi ordenagailu bana ekarri digute. Horrez gain, gelan arbel digitala ere ipini digute.

**ZALDI PROBA**: Martxoaren 6an, San Gregorion bigarren zaldi proba izan zen.

**IRUÑEA**: Martxoaren 9an 1. eta 2. mailako ikasleak Iruñera joan ziren Planetariuma bisitatzera. Egun ederra pasa omen zuten, nahiz eta elurra egin bidean.

**MUSIKA ENTZUNALDIA**: Euskadiko Orkesta Sinfonikoak eskainitako kontzertua ikustera joan ginen martxoaren 24ean 3. zikloko ikasleak. Kontzertu ikusgarria eskaini ziguten.

**ESKOLAKO OBRAK**:
Dagoeneko eskola handitzeko lanak hasiak dira. Zortzi gela berri egin behar omen dituzte eta obrak irailerako bukatzekoak dira.



5. maila



# KALABAZIN KREMA

Beharrezko gauzak lau lagunentzat:

--1000gr kalabazin.

-- 1 tipula

--4 gazta txiki edo philadelphia.

--3 kutxadakada olio.

--750 ml oilasko salda.

-- gatza



Nola egin:

Kazuela batean olioa eta tipula txikitua egin.

Kalabazinak puska txikitan edo xerratan zatitu eta kazuelan jarri egosten salda, gatza eta gaztarekin.

Ordubete bat eduki ondoren, batidorarekin pasa krema fina lortu ahal izateko.

Platerean atera daiteke oliotan frijitutako ogi pusketekin.

Hotza ala beroa har daiteke.

Oharra: Gazta botatzen badiozu gogoan izan gatz gutxiago behar duela.

6. maila








# ESKOLAKO AGENDA 21

Martxoaren 17an aurtengo ikasturteari dagokion bigarren ingurumen batzordea ospatu genuen. Ingurumen batzorde honetan landu ziren gaiak honako hauek izan ziren:

**1.- Eskolako diagnostikoa:**

Atal honetan, gai ezberdinen inguruan aurreko ikasturtetan hartutako erabakiak aztertu behar ditugunez, talde bakoitzari hondakinen eta ura gairen inguruan hartutako erabakiak nola aztertu behar ditugun azaldu genien. Hurrengo hilabetean zehar egin beharko duten lana izango baita.

**2.- Udalak eskolako eskariei emandako erantzuna:**



Beste alde batetik, aurreko urtetan eskolak udalari eskaera ezberdinak egin dizkio gai ezberdinen inguruan eta udalak eskaera horiek zein neurritan bete ote dituen aztertu behar dituzte. Horretarako ziklo bakoitzak gai bati dagozkion eskariak aztertuko ditu: lehenengo zikloak "kontsumoari" dagozkion eskaerak aztertuko ditu, bigarren zikloak berriz "mugidortasunari" dagozkion eskaerak eta azkenik hirugarren zikloak "urari" dagozkion eskaerak.

**3. Herriko diagnostikoa:**

Aurten diagnostikoa San Gregorio auzoan egingo da eta bertan jasotako emaitzak udaletxera eramango ditugu 3. hiruhilabetean. Irteera apirilaren 29an egingo dugu eta eguraldi txarra dela eta atzeratu beharko bagenu maiatzaren 4era atzeratuko genuke.

**4.- Ibaialde lehiaketa:**

Aurten ere ibaialde lehiaketan parte hartzeko aukera izango dugu. Horretarako lanak aurkezteko azken eguna ekainaren 11 izango da. Lan hauetan landu beharko den gaia "ibaia" izango da eta modalitateak berriz, marrazkia, ipuina, komikia zein argazkia.

**5.- Udal foroa:**

Udal foroa maiatzaren 25ean egingo dugu. Bertan herriko diagnostikoan zein herri diagnostikoan suertatzen diren eskaerak aurkeztuko ditugu eta baita aurreko urtetan bete ez diren eskaerak ere.







# ELKARBIZITZA



Hiruhilabete honetan, ikastetxearekin lotura duten hainbat profesionalen funtzioak ezagutu arazi nahi dizkizuegu. Gaurkoan: **Terapeuta Okupazionala.**

## Zein da terapeuta okupazional baten egitekoa hezkuntzan? Zertan laguntzen die ikasleei



Galdera horiei erantzun aurretik, orokorrean ezezaguna den terapeuta okupazionalaren lana zer den azaltzen saiatuko gara.

Terapia okupazionalaren helburua gizabanakoak eguneroko zereginetan inorekin ahalik eta mendekotasunik txikiena izatea, garapena hobetzea eta ezintasunari aurrea hartzea da. Horretarako, pertsonaren abileziez eta trebetasunez arduratzen da, eta hainbat jarduera (norberaren zaintza, produktibitatea eta aisialdiko jarduerak) modu terapeutikoan erabiltzen ditu. Hori lortzeko eta bizi kalitatea hobetzeko, zereginak edota inguruneak ere egokitzen eta moldatzen ditu.



**Garbiñe GUERRA**
EUSKO JAURLARITZAKO HEZKUNTZA UNIBERTSITATE ETA IKERKETA SAILEKO TERAPEUTA OKUPAZIONALA.
KULUNKA, GARAPEN ARAZODUN HAURREI LAGUNTZEKO ELKARTEA



**Itziar LANDA**
EUSKO JAURLARITZAKO HEZKUNTZA UNIBERTSITATE ETA IKERKETA SAILEKO TERAPEUTA OKUPAZIONALA.

### Okupazioa

Askotan, "okupazio" izen horrek jendea nahastu egiten du, lanbidearekin edo ogibidearekin lot daitekeen hitza delako; baina ez du horrekin zerikusirik.

Gure kasuan, gizakiok bizitzan askotariko leku eta egoeretan egiten ditugun jarduerak eta rolak dira okupazioak. Beste modu batean esanda, egunerokoan etxean, eskolan, lantokian zein komunitatean egiten ditugun jarduerak eta errutinak dira, zentzuz beteta daudenak.

Haur eta gazteen kasuan, eskolara joatea eta bertako ekintzak egitea edo jardueretan parte hartzea da euren okupazio nagusietakoa (idatzi, ordenagailua erabili, komunera bakarrik joan, jolastu...).

### Terapia okupazionala hezkuntzan

Hezkuntza Premia Bereziak dituzten ikasleei laguntzeko zerbitzu bat da. Zerbitzu horrek ikaslearen ikaskuntza programako helburuak sustatu eta bermatu behar ditu.

Ikasle batek egin beharreko jardueretan arazoak dituenean, terapeuta okupazionalok haren gaitasunak, zeregina bera eta ingurua ebaluatzen ditugu eta estrategiak diseinatu, ikasle horren trebeziak hobetzeko.

Beraz, hezkuntzan egiten dugun lanaren funtsa ikaslearen curriculumean jasotako helburuak bultzatzea eta laguntzea da. Argi izan behar dugu eskolako zereginik garrantzitsuena ikaskuntza helburuak direla; eta, kasu ho-



netan, terapia okupazionalaren helburua aurrekoak sustatzea eta horien euskarri izatea dela.

Ikaslearen gaixotasun edo arazoek ikaskuntza helburuak arriskuan jartzen ez badituzte, hau da, esate baterako, ikasle batek besoaren mugimendua urritua badu, baina eskolako jarduna zailtasunik gabe egin badezake, ikasle horrek ez luke eskolan zerbitzu hau jaso beharrik izango.

### Zertan laguntzen die ikasleei?

Eskoletan egiten den terapia okupazionalak ikaslearen abileziak garatu, hobetu eta eraberritzeko jarduerak erabiltzen ditu.

Terapeuta okupazionalok ikaslearen ikaskuntza jardueraren barneko arloak ebaluatzen eta lantzen ditugu:

• Eskuetako trebezia, idazketa, eskolako tresnak erabiltzeko era (arkatza, artaziak...)

• Eguneroko oinarrizko jarduerak (komuna erabiltzea, elikatzea, janztea eta eranztea...)

• Ordenagailua erabiltzea

• Gorputz jarrera, mahai-aulkiak

• ...

Aipaturiko arloetan izan daitezkeen eragozpenak hainbat faktoreren eraginpean egon daitezke:

• Ikaslearen gaitasunen eta ezaugarrien mende: ikusmen pertzepzioa, gorputz jarrera (postura), koordinazioa, informazio sentsoriala barneratzeko modua, mugikortasuna, ekintzaren urratsak gogoratu eta sekuentziari jarraitzeko abilezia, beharren adierazpena, galderak egiteko gaitasuna...





• Inguruaren ezaugarrien mende: mahai-aulkien egokitasuna, zaratak, oztopo arkitektonikoak, esparruen antolakuntza, kideekiko distantzia, ekintzak egiteko ordua edo garaia...



• Okupazioaren ezaugarrien mende: konplexutasuna, jarduerak egiteko behar diren materialak (mahai-tresnak, arkatzak, margoak, artaziak, papera, botoiak...) eta jarduerak egiteko modua...





Guzti hori aztertzeko, hainbat tresna erabiltzen ditugu:

• Elkarrizketak: tutorearekin, gurasoekin edota ikaslearekin lan egiten duten beste profesional batzuekin.

• Askotariko protokoloak: eguneroko jarduerak, garapen motorra, arlo sentsoriala, ikusmen eta mugimenduaren arteko koordinazioa... balioesteko testak eta egiaztapenak.

**Eskoletan ematen den terapia okupazionalak ikaslearen abileziak garatu, hobetu eta eraberritzeko jarduerak erabiltzen ditu.**



**Terapeuta okupazionalok ikaslearen ikaskuntza jardueraren barneko arloak ebaluatzen eta lantzen ditugu.**

• Behaketa zuzena: ikaslea gelan dagoenean edo berarentzako arazo diren jarduerak egiten ari denean.

Kasu eta egoeraren arabera, terapia okupazionala hainbat modutara gauza daiteke: ikaslearekin arreta zuzena izanez, inguruaren aldaketa proposatuz, ekintza eta ariketetan moldaketak eginez, material bereziak ezarriz edota eskolako profesionalak trebatuz (tutorea, hezkuntza laguntzako espezialista, pedagogia terapeutikoko irakaslea...). Betiere, ikaslearekin lan egiten duten profesionalekin koordinatuta eta, askotan, haiekin elkarlanean (fisioterapeutak, logopedak...).

Laburbilduz, ikaslearen parte-hartze eta jarduera arrakastatsuak ikaslearen abilezien, okupazioen eskakizunen eta jarduera horiek egiten diren inguruen arteko oreka egokiaren mende daude.









## Kasu eta egoeraren arabera, terapia okupazionala hainbat modutara gauza daiteke: ikaslearekin arreta zuzena izanez, inguruaren aldaketa proposatuz, ekintza eta ariketetan moldaketak eginez, material bereziak ezarriz edota eskolako profesionalak trebatuz.

Hona hemen adibide batzuk:

- Oreka arazoak dituen ikasle bat eserita dagoela jantzi eta erantzi egiten bada, bere burujabetasuna eta segurtasuna hobe ditzake.
- Eskuekin tresnei heltzeko arazoak dituen ikasle batek trebetasun hori hobe dezake, tresnei pisua erantsiz edo ezaugarri sentsorialak aldatuz (bibrazioa, ukia).
- Garapen arazoak dituen ikasle batek salda koilararekin hartzeko gaitasunik oraindik garatu ez badu, katilua erabiliz har dezake salda.
- Eskuetan trebezia ahula duen ikasle batekin oinarri motoreak eta sentsorialak lantzen baditugu, arkatza hartzeko modua hobetuko du.
- Bere kabuz eserita egon ezin den ikasle batek komun ontzian eserleku berezia badauka, komunean bakarrik egoteko modua izango du.
- Aulki gurpilduna erabiltzen duen ikasle bati, besteak beste, altuera egokitu dakiokeen okertzeko moduko mahai zabalagoa ipiniko zaio.
- Ikasle batek gorputz jarrera egokia izateko behar dituen laguntzak eta mahai-aulki bereziak baditu, bere gorputz jarreraz arduratu beharrean, esku-besoen erabilera hobe dezake, bai eta arreta ere.
- Ezkertiarrak diren ikasle askok arazoak izaten dituzte idazketarekin: okertzeko moduko mahaia erabiltzen badute, eskumuturraren postura hobetzen dute, eskua idazten ari diren lerroaren azpitik doa, eta idazten ari direna ikus dezakete. Ezkertiarrentzako bereziki diseinatutako tresnak (erregela, arkatzzorrozkailua…) erabiltzen dituztenean, zailtasun gutxiago izaten dute.







Artikulu honetan, Hezkuntza Premia Bereziak dituzten ikasleen arretari dagokionez, terapia okupazionalaren nondik norakoak jorratzen saiatu gara. Hala ere, hau guztia prozesu orokor baten barnean dago. Eta, besteak beste, ikasleen arreta lantzeko, Hezkuntza Premia Berezien arloko aholkulariek, beharren eta egoeren arabera, gure esku-hartzea edo eta beste profesional batzuena (fisioterapeuta, logopeda…) eskatzen dute.

Egun, Euskal Autonomia Erkidegoko Hezkuntza Sailean 8 terapeuta okupazional ari gara lanean.





# IKT- 2009-2010 IKASTURTERAKO PROGRAMAK




2.0 Eskola Programari buruz, Eguzki Berri 85. alean hainbat informazioren berri eman zen.

Oraingo honetan helburuak aipatuko ditugu:

- Ohiko ikasgelak ikasgela digitalak bilakatzea
- Irakasleak IKT-dun gaitasunetan trebatzea
- Ikasgeletako metodologia aldaketari laguntzea
- Eten digitala murriztea
- Lan dinamikoa, partehartzailea, beste ikastetxeekin lankidetzan eta sarean sustatzea
- HEZIKETA KALITATEA HOBETZEA

Ordenagailu eramangarriak, Arbel Digital Interaktiboa (ADI), ordenadoreak gordetzeko eta armairu elektrifikatua eskolan ditugu. Hemendik aurrera, tresna hauen erabileran, trebatzen goazen neurrian, goian aipatutako helburuak betetzeari ekin beharko zaio.

Web orrialdean ere www.joxemielbarandiaran.net osatze lanetan ari gara. Asteroko irratsaioak bertan zintzilikatuta daude eta Eguzki Berri aldizkariak ere bai (aipatutako helbidean, ekintzen atalean).Gurasoek ere euren txokoa hor dute: Guneak – Gurasoak.

Eskolako blog bat ere badugu.
www.joxemielbarandiaraneskola.blogspot.com

Denon eskura dauden baliabide hauek dinamikoak izateko sortuak dira. Guztion arteko ekarpenekin heziketa kalitatea hobetzen saiatuko gara.







# HIZKI ZOPA



1.- Saia zaitez hamar animali hauen izenen bila.









| | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| M | A | Q | K | Z | H | C | T | H | A |
| A | I | D | A | P | E | O | X | N | E |
| P | D | O | R | L | I | R | A | S | T |
| A | R | R | A | Z | R | F | K | I | N |
| T | A | D | K | A | Q | I | U | K | A |
| X | B | O | O | L | O | V | R | A | F |
| E | T | K | L | D | W | V | R | T | E |
| A | G | A | A | I | E | K | A | U | L |
| A | R | M | I | A | R | M | A | A | E |
| S | K | H | E | A | A | E | G | U | S |












**6. maila**



# HIEROGLIFIKOAK

2.-






1-Meriendatzeko jango dugu...



2-Zein herri da?

A=I



3-Urez beteta dago...






4- Airean dabilkigu...

**6. maila**



3.-




4.- Bila itzazu marrazki hauen arteko zazpi desberdintasunak:




**6.maila**



5.- Margo ezazu marrazki hau nahi duzun bezala eta bila itzazu bertan izkutatuta dauden sei marigorringoak.

**6.maila**






# 6.- GURUTZEGRAMA




**Ezkerretik eskuinera:**

1- Bizkaiko hiriburua
2- Arabako hiriburua
3- Gipuzkoako hiriburua
4- Zuberoako hiriburua
5- Nafarroa Behereko hiriburua

**Goitik behera:**

A.Lapurdiko hiriburua
B.Nafarroako hiriburua

6. maila




## ERANTZUNAK:

| 1.- Hizki zopa: | 2.- Hieroglifikoa: |
|---|---|
| 1—elefantea<br>2—Katua<br>3—Karakola<br>4—Zaldia<br>5—Armiarma<br>6—Dordoka<br>7—Ardia<br>8—Txakurra<br>9—Sugea<br>10—Mapatxea | 1—Opila<br>2—Zaldibi<br>3—Botila<br>4—Kometa |

**6.-**

| | | | | | | | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | | A | | | | | | | | | | | | | |
| | 1 | B | I | L | B | O | | | | | | | | | |
| 2 | G | A | S | T | E | I | Z | | | | | | | | |
| | | I | | | | | B | | | | | | | | |
| 3 | D | O | N | O | s | T | I | A | | | | | | | |
| | | N | | | | | R | | | | | | | | |
| 4 | M | A | U | L | E | | U | | | | | | | | |
| | | | | | | | Ñ | | | | | | | | |
| | | | | | | | E | | | | | | | | |
| | 5 | D | O | N | I | B | A | N | E | G | A | R | A | Z | I |

**6. maila**







# LEHIAKETA

Izena ..........................................................................

Maila............................................................................

Erantzun itzazu asmakizun hauek.

1- Altzaporrura bidean zazpi atsorekin gurutzatu naiz. Atso bakoitzak zazpi zaku zeramatzan eta zaku bakoitzean zazpi arkume. Zenbat atso eta arkume zihoazen Altzaporrura bidean?

Erantzuna:

2-Nola zula liteke globo bat bertatik airerik atera gabe eta zaratarik egin gabe?

Erantzuna:

3-Oso lodi dauden hiru lagun ermitara abiatu dira euritako bakarrarekin. Ermitara iristean, ordea, guztiak lehor-lehor daude;.Nola liteke?

Erantzuna:

4-Tren elektriko bat Altsasutik Iruna doa 100 km/h abiaduran. Haizeak iparretik jotzen du 30 km/h abiaduran. Norantz joango da kea?

Erantzuna:

6 .maila





